† Bedeinka gaizala Jainko ahalguztidunak: Aitak eta Semeak eta Espiritu santuak.
—Amen.

† Goazen Jaunaren bakean.
—Eskerrak Jainkoari.

**Iruzkina**
Bateatzailearena oihu egitea zan, zemaiak banantzea, bihozbarritzera *behartzea*... Jesusen jarduna isilagoa izango da, erreinuaren ezaugarriez betea. Berak markatzen deusku bidea.

Gure arteko Neoliberalismo honek diru-gosean eta bakotxakerian suntsitu gura gaitula jakinda, pazientzia guztiaz ahalegindu gaitezan salbamen zantzuak han-hor-hemen areagotzen: berogailua biztu ezin dabenentzat laguntzak bilatzen; bortxakeriaren aurka urteten; iheslariei ateak zabaltzen; diru-egarria baztertzen, eta daukaguna behartsuekaz alkarbanantzen...

Emon deiguela adore, horretan hainbeste eta hainbeste, bai isileko eta bai ageriko, erakundek eta lagunek diharduela jakiteak; euren arteko izan geintekez Caritasen bidez eta gizakiaren alde dihardun beste hainbeste erakunderen bidez.

—**Datorren domekan Caritasen aldeko eske-batzea**.



# ABENDU aldiko 3. domekea /A



# ELIZ ALKARTEAREN domekako elizkizuna

munduko pekatua: **ERRUKI, JAUNA**.

—Jaungoikoaren Bildotsa, zeuk kentzen dozu munduko pekatua: **EMOIGUZU BAKEA**.

(*Hostia bat eliztarrei erakutsiz, esan:*)

—Hona hemen Jaungoikoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauana: zoriontsuak Jaunaren mahaira deituak.

* *Jauna, ni ez naz inor zu nire etxean sartzeko, baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.*

## Jaunartzerako abestia

**Zatoz, Jauna, zatoz lurrera**
zure herria salbatzera.

¹ *Bakea ta justizia bialdu mundura, Jauna;*
*zure jaiotzak gugana bekar poza, zoriona.*

² *Okerretatik zuzendu, gaitz bideetatik aldendu,*
*gure kateak apurtu, bide ilunak argitu.*

³ *Gorroto-bideetatik aldendu gagizuz, Jauna;*
*alkar parkatu dagigun emoiguzu maitasuna.*

.../..



na ez da inoiz lotsatuko.

## Zuzendariaren agurra

† Egun **ba**ten etorri zan Jauna / egunen amaieran eto**rri**ko dana / eta beti etorten **da**goana / pozez goretsi daigun. # BEDEINKATUA JAUNGOIKOA JESUKRISTO GURE JAUNAREN AITA.

## Abenduko koroiaren inguruan

Abenduko koroiaren **hirugarren** kandelea bizterakoan, salbamena Jainkoagandik baino ez dogula itxaroten agertuko dogu, eta berari baino entzun ez-eta, zintzo eta bulartsu erantzun gura deutsogula. Abestu daigun:

### Koroiaren inguruko abestia



**Damu-otoitza**
Itxaroten ez jakiteak eta gauzak oraintxe berton gura izateak

Halan ere, zeruetako erreinuko txikiena ere ha baino handiagoa da».

*Jaunak esana*

*(Ondoren DIRU-BATZEA, egin daiteke)*

*Oharra*
Kristauen ezaugarria da limosnea. Behartsuekaz gagozala erakusten dogu bertan, eta baita ondasunei loturik ez gagozala ere, ustea Jainkoagan jarrita dogulako. izan daitela gaurko limosnea benetako ezaugarria: biztu daigula alkartasunezko argia.

**ESKARIAK**

† *Erruki urteak* Jainkoa apur bat gehiago ezagutzera eroan gaitu, eta harengan ustetsuagoak izatera. Zuzendu deioguzan, ba, gure eskariak konfiantza osoaz:

—Elizearen alde: bere harrera ona eta ate irekiak erakutsi deien behartsu guztiei, gizarte honek mindu edo alboratu guztiei, *eskatu deiogun Jaunari*.
—Txarkeriak jota, ezeren eta inondiko itxaropenik barik dagozanen alde: izan daien Jainkoagan uste on, eta emon daian pazientziak eurengan frutu on, *eskatu deiogun Jaunari*.
—Jainkoagandik zigorra baino ez datorrela, edo ezer onik ezin daitekela itxaron, uste dabenek haren eurenganako errukia eta maitasuna



zure Jainkoa, Sion, gizaldien gizaldietan. **R/.**

## *HITZAREN LITURGIA*

**Lehenengo irakurgaia**
*Entzun daiguzan Profetearen berba gozo eta gogo altxagarriak. Onartu daiguzan Jainkoari buruzko barriok, esker onez erantzuteko prest.*

**Isaias Profetearen liburutik** (Is 35, 1-6a. 10)

Poztu beitez basamortua eta lur elkorra,
alaitu bedi eremua eta lilia lez loratu,
jantzi bedi lorez
eta egin begi irrintzi eta jauzi pozaren pozez.
Libano baizen zoragarri
eta Karmel mendia
eta Saron lautada baizen eder bihurtuko dira.
Ikusiko dabe Jaunaren aintza,
gure Jainkoaren edertasuna.
Indartu egizuez esku ahulduak,
sendotu belaun makalduak;
esan bihotz-bildurtiei:
«Eutsi gogor! Ez izan bildurrik!
Horra zuen Jainkoa!
Berbera dator zuek salbatzera
eta merezia daben zigorra arerioei emotera».
Orduan, itsuen begiak edegiko dira
eta gorren belarriak zabalduko.
Herrenak basahuntzak lez salto egingo dau
eta mutuaren mihinak oihu egingo pozez.
Jaunak askatuak ibiliko dira bide horretan,
Harek libratuak bihurtuko handik.
Pozez kantari etorriko dira Sionera:
amaibako alaitasuna hareen aurpegian!

† Aitaren eta Semearen eta Espiritu santuaren izenean.
—Amen.

† Ondo etorri, senideok, Abendualdiko hirugarren domeka honetako liturgia ospatzera: berba pozgarriak entzungo doguz, adore-emoileak, eta Jesusek egiten dauan goralpena ere bai.
Beharrezko doguz holango berba eta goralpenak etsipenean jausi ez gaitezan, kontsumokeriak iruntzi ez gaizan, besteenganako eta izadiaganako errespetuz eta alkartasunez bizi izan gaitezan gura badogu. Goazen, ba, alaitasunez ospatzera.

## Sarrera-abestia

ZATOZ, JAUN MAITALEA

Arantzazutik

Za - toz, Jaun mai - ta - le - a, bi - zi - a - ren i - tu - rri - a! Me - si - as Jaun - goi - ko - a, za - toz, za - toz - Jau - na.

1. En - tzun - ei - zu gu - re - mi - na, bai o - toi - tza, bai ne - ga - rra, en - tzun kris - ta - uen e - zi - na.

1. Entzun eizu gure mina, bai otoitza, bai negarra; entzun kristauen ezina.
3. Jaunak gaitu salbatuko. Hagan uste on daua-



## OTOITZA

Jauna: *giltzari emon*
*eta argia biztu da*la ikusten dogunok
ezin dogu ulertu *erein eta itxarotea*:
bat-batean lortu gura doguz gauzak,
itxaron barik.

Eta zure erreinua isilean eta urraska doa
han-hor-hemen aurrera,
pazientziadun askok eta askok
emoten daualako eskura dauan laguntzea.

Ez naitela handikerian jausi, Jauna;
ez naitela neuretxoa emon barik gelditu,
nireak ezer gitxi daikela-ta.
Emoidazu *salbamen zantzu* izateko grazia.

**Zatoz, Jesus Jauna!**

**Danek:**

**Zatoz, Jesus Jauna!**

## Azkenerako abestia

**ZATOZ, JAUNA, LEHENBAITLEHEN,**
**ZATOZ, ZURE EGARRI GARA.**
**ZATOZ, JAUNA, LEHENBAITLEHEN,**
**ZATOZ, GUREGANA.**

aldendu egin geinkez salbamenaren egarri izatetik. Egin deiogun dei Jainkoaren errukiari:
—Jesus Jauna, e**gi**azko berbea. Erruki, Jauna.
—Jesus Jauna, Aitagan uste o**so**a zenduana. Kristo, erruki.
—Jesus Jauna, gizaki aske e**ta** askatzailea. Erruki, Jauna.

*Ez dago aintzarik…*

*Egin daigun otoitz Jesus gure Jaunak egiten eban lez: horretarako salmoak erabiliz:*

(**otoitz hau jesarrita egin daiteke**)

**Erantzun Salmoa**




**R/. Zatoz, Jauna, eta salbatu gagizuz.**

Leiala da betiren beti,
emoten deutse eskubidea zapalduei,
ogia gose diranei. **R/.**

Atxilotuak Jaunak askatzen ditu,
itsuen begiak Jaunak argitzen ditu.
Konkor dagozanak Jaunak ditu zutunduazoten,
zintzoak Jaunak ditu maitatzen. **R/.**

Arrotzak Jaunak ditu zaintzen,
umezurtz eta alargunak laguntzen,
gaiztoen asmoak eragozten.
Errege izango da Jauna sekuletan,



ezagutzeko aukerea izan daien, *eskatu deiogun Jaunari*.

—Jainkoaren berbea entzuteko eta, alkartean fedea ospatzeko aukerea dogunok zabalik egon gaitezan gure senide pobreen beharrizanetara beti harrera on egiteko prest egon gaitezan, *eskatu deiogun Jaunari*.

† Gure otoitzak Jesus Jaunak irakatsitakoan indar hartu daian, esan daigun gogotsu, Jesusek berak irakatsitako otoitza:

**GURE AITA** ZERUETAN ZARANA,
SANTU IZAN BEDI ZURE IZENA,
ETOR BEDI ZURE ERREINUA,
EGIN BEDI ZURE NAHIA
ZERUAN BEZELA LURREAN ERE.
EMOIGUZU GAUR EGUN HONETAKO OGIA,
PARKATU GURE ZORRAK
GEUK ERE GURE ZORDUNEI
PARKATZEN DEUTSEGUN EZKERO
ETA EZ GU TENTALDIRA EROAN
BAINA ATARA GAGIZUZ GATXETIK.

*(Gurejauna altara gainean jarri daiteke. Agurtu ondoren —belauna okertuz edo burua makurtuz—, esan):*

—Jaungoikoaren Bildotsa, zeuk kentzen dozu munduko pekatua: **ERRUKI, JAUNA**.

—Jaungoikoaren Bildotsa, zeuk kentzen dozu

Poza eta alaitasuna izango dabez lagun.
Nahigabeak eta negarrak ihes egingo dabe.

*Jaunak esana*

**Bigarren irakurgaia**

*Laster nekatzen gara. Dana gura dogu oraintxe eta hementxe. Eta behin baino sarriagotan itxaron beharra egoten da. Eta itxaroten jakiteak bere frutua emoten dau...*

**Santiago Apostoluaren gutunetik** (St 5, 7-10)

Senideok: Izan egizue pazientzia Jaunaren etorrera arte. Begiratu nekazariari: lurraren frutu ederraren zain egoten da eta pazientziaz itxaroten ditu goiz-euria eta berant-euria. Izan pazientzia zuek ere eta egon sendo, laster etorriko daeta Jauna.
Senideok, ez ibili bata bestearen aurka marmarka, kondenatu ez zagiezan; begira, epailea ate-atean da. Senideok, hartu egizuez sufrimentu eta pazientziaren eredutzat Jaunaren izenean berba egin eben Profetak.

*Jaunak esana*

**Ebanjelioa**

*Jesusen sarrerea iragarten jaku gaurkoan; edo bardin dana, haren argitara urtetea: Bateatzailea goralduz ikusiazoko deuskuz Jainkoaren erreinuko ezaugarriak. Egin deiogun harrerea Aleluia abestuz, zutunik.*

**ABENDUALDIRAKO** Aleluia: Urratu eizue (G.J. 8/41)

A - le - lu - - ia! A - le - lu - - ia! A - le - lu - ia!

V/. Ur- ra- tu ei- zu- e bi- de- a Jau- na-ren- tzat, zu- zen- du ha- ren bi- dex-

kak: e- ta i- ku- si- ko da- be guz- ti- ek Jaun- goi- ko- a- ren sal- ba- me- na.



**Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik** (Mt 11, 2-11)

Aldi haretan, Joan Bateatzaileak, kartzelan Kristoren egiteen barri izanik, bere ikasle batzuk bialdu eutsozan itauntzera: «Zu zara etortekoa ala besteren baten zain egon behar dogu?»
Jesusek erantzun eutsen: «Zoaze eta esan Joani entzuten eta ikusten dozuena: itsuek ikusten dabe eta herrenak badabilz, legenardunak garbi gelditzen dira eta gorrek entzuten dabe, hilak biztuten dira eta behartsuei Barriona iragarten jake. Eta zorionekoa Nigaitik jauspiderik hartzen ez dauana!»
Hareek alde egitean, Jesus Joani buruz berba egiten hasi jakon jenteari: «Zer ikustera urten zenduen basamortura? Haizeak astintzen dauan kainaberea? Edota zer ikustera urten zenduen? Apain jantzitako gizona? Apain janzten diranak errege-jauregietan egoten dira. Zer ikustera urten zenduen, bada? Profetaren bat? Baietz dinotsuet, eta profeta baino ere gehiago dana. Horretaz dago idatzita Liburu Santuan:
"Begira,
neure mezularia bialtzen dot zure aurretik,
zuri bidea prestatzera".
Bene-benetan dinotsuet: Ez da sortu amaren semerik Joan Bateatzailea baino handiagorik.